# SANTAGEDA
## birjina eta martiria



**Sarrera-oharra**

Decio enperadore erromatarren aldietan aurrean erabilte izugarriak sufritzen eben kristinauek. Quintiano Siciliako Consul ordezkoak Agedaren emakume gozotasunak eskuratu nahi zituan; eta ezin lortuta, heriotzara emon eban, lehenengo bularrak moztuta, eta gero ikatz gori gainean tatarrez erabilita.

Ageda hil eben hurrengo urtean, Etna su-mendia eraginean hasi zan. Agedaren bitartekotasuna eskatu eben, eta su-goria Kataaniako ateetan gelditu zan. Ordutik betako zaindari dabe.

210ean jaioa, 251n hil eben.

Gure artean ere ospe handia dauka santa honek, eta ez, horraitino, *birjintasuna* estimatzen dalako... Ea Agedak Kristorengana garoazan eta ausardiaz emoten dogun, harek lez, gure kristautasunaren testigutza.

**Sarrera abestia**

**GOAZEN ALKARTURIK** biztuta fedea
argitan zabalik maitasun bidea.

1 *Entzun dezagun apaltasunez*
*entzun dezagun Jaunaren hitza*
*Bere hitzetan gure egia*
*gure indarra gure bizia.*
2 *Gurekin dogu maisu ta lagun*

*gurekin dogu, gurekin, Jauna!*
*Egin dezagun zuzentasunez*
*ta maitasunez bere esana!*

**Abadearen agurra**
† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.

† Gure ahulezietan / bere ahalmenaren indarra ager**tzen** deuskun Jauna / izan bedi zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Damu-otoitza**

Gure zaindariaren eguna eukaristiaren mahai inguruan ospatzeko alkartu garanok, autortu daigun Agate deunaren fede-sendotasuna eta gure fedearen makaltasuna, eta hartu daigun babes Jainkoaren errukian:

—Jesus Jauna, Jainkoaren nahia bi**la**tzen zenduana. *Erruki, Jauna*!
—Jesus Jauna, Jainkoaren erreinua ira**gar**ten zenduana. *Kristo, erruki*!
—Jesus Jauna, makalak indardun bi**hur**tzen dozuzana. *Erruki, Jauna*!

**OTOITZA**

Jauna, zeure gogoko izan zenduan
Agata birjina eta martiri santua,
bai bizi izan eban birjintasunaren ederrez,
bai eta martiritzan erakutsi eban indarrez ere;
emoiguzu, haren otoitzari esker, zeure parkamena.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

## HITZAREN LITURGIA

**1 Ko 1, 26-31**

*Jesu Kristoren sinismenean bizi izatea gaur gatxa dala badinogu, zer esango ete eben lehenengo kristinauek eta, geroxeago, aurrean erabiliak ziranean? Danen adorea indartzera datoz Pedro apostoluaren hitzok.*

*Munduak baliobakotzat dauana aukeratu dau Jainkoak.*

**San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik**

Senideok: Begira zeintzuk zarien Jainkoak deituak; zuen artean ez dira asko munduak jakituntzat hartzen dituanetakoak, ezta ahaltsu nahiz handikietakoak be. Bestetara, munduak zorotzat dauana aukeratu dau Jainkoak, jakitunak lotsarazoteko, eta munduak makaltzat dauana, indartsuak lotsarazoteko; munduak baliobakotzat eta mespretxagarritzat dauana aukeratudau Jainkoak, munduaren begietan ezer ez dana, zeozer dirala uste dabenak ezerezteko; holan, ez dau inork Jainkoaren aurrean harrotzerik.

Berari zor deutsazue izatea Kristo Jesusengan, hau egin dau-eta Jainkoak guretzat jakituria, honen bidez askatu gaitu, salbatu eta santu egin. Holan betetzen da Liburu Santuak dinoana: «Harrotu nahi dauana, harrotu bedi Jaunagan».

Jaunak esana.

**Erantzun salmoa** 030

**Agate Deuna** Sal 030

Udaia'24

Zeu- re es - ku - e - tan iz - ten dot, Jau - na, ni - re bi - zi - a.

**R/. Zeure eskuetan izten dot, Jauna, nire bizia.**

Izan zakidaz harri babesle,
gaztelu salbatzaile.
Zeu zaitut-eta neure hatx eta **gaz**telu,
zeure izenaren ohorez eroan nagizu eta **gi**datu. R/.

Zure eskuetan izten dot neure **bi**zia;
askatu nagizu, Jauna, Jainko **le**iala.
Poztu eta alaituko naz zure maitasunagaitik,
erreparatu deutsazu-eta nire atsekabeari,
arduratu zara nitaz larri**al**dian. R/.

Libratu nagizu arerio eta pertsegitzaileen **es**kutik.
Erakutsi aurpegi argia zerbitza**ri** honi,
salbatu nagizu zeure mai**ta**sunaz.  R/.




**(R/. Aleluia.)   1 P 4, 14**

V/. Zorionekoak zuek,
kristau izateagaitik iraintzen bazaituee,
Jainkoaren Espiritu aintzatsua
zuengan dagoala esan nahi dau-eta horrek. (R/.)

**Lk 9, 23-26**

*Bere sinismena txantxetan hartzen dauanak, eta ez benetan, ezin izango dauz onartu Jesus Jaunak bere ikasleei zuzentzen deutsezan berbok. Egin deiegun harrera on Aleluia abestuz, zutunik.*

† Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik (Lk 9, 23-26)

Aldi haretan, Jesusek hauxe esan eutsen guztiei: «Nire ondoren etorri gura dauanak uko egin beio bere buruari, hartu begi eguneroko bere kurutzea eta jarraitu beist. Izan be, bere bizia salbatu gura dauanak galdu egingo dau; baina bere bizia Nigaitik galtzen dauanak salbatu egingo dau». Zertarako dau gizonak edo emakumeak mundu guztia irabaztea, bere bizia galtzen eta hondatzen badau?

Beraz, inor nitaz eta nire mezuaz lotsatzen bada, Gizonaren Semea be lotsatu egingo da haretaz, bere aintzarekin, bere Aitaren aintzarekin eta aingeru santuen aintzarekin etorriko danean».

**Jaunak esana**

**HOMILIA**

**ESKARIAK**

† Jesukristo maite ebalako azkeneraino jarraitu eutson Santagedaren eskutik egin daiguzan gaurko eskariak:

—Eleizearen alde: bere seme-alabek maite izan daien, zerbitzatu daien, bizkortu daitezan eleizgintzan esku hartzeko, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Bizitza gero ta erosoago ta hobeago baten atzean gabizanok gure ingurura ere begiratu daigun, eta gogoan hartu daiguzan bizitza hobeago bat bilatzen gure artera datozanak, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Ondasunak banantzeko dirala argi izan daigun, eta bilatu daigun «Caritas»egaz eten bako konpromisua izatea eta gure ondasunak alkarbanantzea, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Eukaristia hau ospatzeko alkartu garanon alde: Jainkoari non eta zelan entzun ikasi daigun, eta esker onezko erantzuna emon ahal izan deiogun Santageda eredu dogula, *eskatu deiogun Jaunari*.

† Zure Barri Onaren autorle nahi gaituzun Jainko Aita: egin gaizuz geu ere Santagedaren antzeko sutsuak gure sinismena autortzen. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

### Eskeintza

Bedeinkatua zu, Jauna, zeru-lurren Jainkoa, zeure esku zabaletik hartu ditugu orain ekarri deutsuguzan ogi-ardauok, lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortuak: honeexek egingo jakuz biziaren ogi ta betiko zorionaren edari.
—Bedeinkatua zu, Jauna, orain eta beti.

Senideok: egin daigun otoitz, guztiok batean, Eliza osoaren oparia Jaungoikoari eskeintzerakoan.
—Jainkoa goresteko eta gizakiak salbatzeko.

### Oparien gainekoa

Atsegingarri izan bekizu, Jauna,
Agate santuaren egunean egiten dihardugun eskeintza,
beraren martiritza atsegingarri izan jatzun lez.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

### Prefazioa

V./ Jauna zuekin.............................. R./ Eta zure espirituarekin
V./ Gora bihotzak .................................R./ Jaunagan daukaguz
V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari.....R./ Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.
Kristori jarraituz, Agata birjina martiri santuak
zure izena autortzeko isuri eban odolak
argi erakusten ditu zure miragarriak:

gure makaltasunean zeure ahalmena agertzen dozu
eta indartsu egiten indarrik bakoa,
zure testigu izan dadin,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Horregaitik, zeruko indar guztiekin,
lurrean beti eta beti goresten zaitugu,
Zuri, Jainko guztiz handi horri,
eten barik [esanez] kantatuz: Santu, santu, santua…

## III. Eukaristi-Otoitza

Santu zara, bai, Jauna,
eta diran guztiek emoten deutsue behar dan gorespena.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez
eta Espiritu Santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen
eta Zeuk diharduzu beti eta beti zeure herria batzen,
eguzkialde batetik besteraino opari garbia eskeini dakizun.

Apalik, beraz, Jauna, eskatzen deutsugu:
egin daizuzala santu, zeure Espirituaren indarrez,
oparitako ekarri ditugun ogi-ardao honeek,
zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren
Gorputz eta † Odol egin daitezan,
misterio honeek berak agindurik egiten ditugun ezkero.

Berak, saldu eben gau haretan,
ogia hartu eta, Zuri eskerrak emonez,
bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:

HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Era berean, afalondoan, kaliza harturik,
Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa.**
Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte, hau dogu, hau, barri ona!
Horregaitik, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi salbagarria eta hilen artetik biztea
eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrera itxaroten dogula,
Zuri eskerrak emoteko eskeintzen deutsugu
sakrifizio bizi eta santu hau.

Begira, Jauna, zeeure Eleizearen eskeintza honi;
ikusi eskeintza honetan
Zurekin baketu gaituan Jesu Kristoren oparia;
egizu, Jauna, zure Semearen Gorputza eta Odola
hartzen ditugunok,
Espiritu Santuaz beterik, Jesu Kristogan
gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezala.

Berak egin gaizala Zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi daigun:
lehenengo, Maria guztiz dohatsua,
Jainkoaren Ama beti Birjinarekin,
haren senar Jose santuarekin,
zure Apostolu eta martiri santuekin,
**Agate birjina martiri** santuarekin eta santu guztiekin;

badakigu, honeen bitartez
zure laguntza izango doguna nonahi eta beti.

Gu Zurekin baketzen gaituan opari hau izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake eta salbamen.

Mundu honetako ibilaldian,
bete egizu sinismenez eta maitasunez zeure Eleizea:
zeure zerbitzari Frantzisko gure Aita Santua,
Joseba gure Gotzaina,
beste gotzain eta eleizgizon(-emakume) guztiak
eta zeurea dozun herri osoa.

Entzun, bihotz onez,
zeure aurrera deitu dozun familia honen otoitzak;
Aita guztiz ona, erakarri Zeugana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zeure seme-alabak.
† Hildako gure senideak (…),
eta mundu honetatik Zurekin adiskide joan diran guztiak,
hartu eizuz bihotz onez zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula betiko,
eurekin batean, Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez;
beronen eskuz emoten deutsazuz
ondasun guztiak munduari.

> HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN
> ZURI, AITA, JAUNGOIKO AHALGUZTIDUN HORRI
> ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN
> OSPE TA AINTZA GUZTIA
> GIZALDI TA GIZALDI GUZTIETAN.

—Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,

egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere geure zordunei

egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur

parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzi itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik,
emoiguzu bakea gure egunotan,
zure errukiari esker
pekatutik gabi bizi izan gaitezan
eta estualdietan sendo;
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesukristo gure Salbatzailea
noiz etorriko dan zain gagozela.

*- Zeurea dozu erregetza;*
*zeureak ospe ta indarra orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.
*— Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
*—Eta zure espirituarekin.*

† Emoiozue bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: *emoiguzu bakea*

## JAUNARTZEA

† Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:
—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**Jaunartzean**

HONA BILDOTS EZTIA / EGIAZKO OGIA
ZERUTIK DA JATSIA / JAINKO MAITIA.
GURE ARTZAIN ONA TA EGILEA
AITARIK MAITEENA, ZERU-EMOILEA.
OSTIAN ZAOZALA DOGU SINISTEN
ZERUAN BEZELA HOR GU MAITATZEN.
ZINEZ GURTZEN ZAITUT, JESUS EZTIA.
ARREN, EMOIDAZU GOI-SINISTIA.

1. Ogi hau jaten dauanak izango dau bizia.
Kaliz hontan aurkitzen da Jainko-odol guztia:
**R/. Hor dogu janaria ta hor gure edaria.**
2. Jaungoikoak deitzen gaitu: bera dogu janari.
Beragan dogu aurkitzen osasuna ugari.
**R/. Zelan begiratzen deutson Jainkoak gizonari!**

3. Danok gaur jaten badogu ogi bat mahai batean
ezin izan gorrotorik gaurtik gure artean.
**R/. Alkar maitatu dagigun Jesusen izenean.**

**Jaunartze ondorengoa**

Oi Jainko, santuen koroa emon zeuntsan Agate santuari
birjina eta martiri izan zalako;
emoiguzu, sakramentu honen indarrez,
gatx guztiak gainditurik, lortu daigula zeruko ospea.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Azken onespena**

† Jauna zuekin.
—Eta zure espirituarekin

*(buru makur)*

Poztu dadila, Jauna, kristau herria,
zure Semearen gorputzeko atal diran santuak gorestean;
eta egizu, Santageda birjina martiriaren
gomutaz alkartu garenok,
haren antzera, egunen baten,
lortu daigula betiko zoriona.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

† Bedeinka zaizela Jainko ahalguztidunak:
Aaitak eta † Semeak eta Espiritu santuak.
—Amen.
† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jaungoikoari.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguzti - dun be - ti - ko ho-rri. Kris-to-ri jarraituz,

Agate martiri san-tu-ak, zure izena autortzeko isuri eban o-do-lak

argi erakusten ditu zu-re mi-ra - ga-rri-ak: gure makaltasunean

zeure ahalmena agertzen do-zu-la-ko, eta indartsu egiten indarrik

ba - ko - a, zeure testigu izan da-din, Jesu Kristo gure Jau-na-

ren bi-tar-tez. Horregai-tik, zeruko indar guz-ti-e-kin, lurrean

beti eta beti goresten zai-tu - gu, Zuri, Jainko guztiz handi ho-rri,

e - ten ba - rik kan-ta-tuz: